EUSKERA




Marilo
Jokin
Josetxo
Iñaki B.
Iñaki S.
Alberto
Jorge
Asier
Benito Fermín
Peio

Alde Zaharra - Iruñea

2007 azaroa

## SAR HITZA

Alde Zaharreko hainbat auzokide bildu berri gara gizarteari helarazteko espainiar eta frantziar kartzeletan dauden hamar auzok pairatzen ari diren egoera. Zoritxarrez, hogeita batgarren mende betean oinarrizko zenbait eskubide ukatzen ari zaizkie, hala nola askatasun eskubidea, tratu duina izateko eskubidea; osasun eskubidea; hezkuntza, defentsa eta eskubide linguistikoak; amatasun eta aitatasunari lotutako eskubideak eta elkarrekin eta Euskal Herrian bizitzeko eskubidea.

Marilo Gorostiaga presoak jasaten ari duen egoera da bereziki latza; gaixotasun larri eta sendaezina daukan arren, berriki 92. artikuluak aitortzen dion askatasuna ukatu diote. Jokin Santxoren egoera ere azpimarratu behar da, izan ere, bere zigorraren 3/4ak beteak dauzkan arren, espainiar legediak aitortzen dion askatasuna ukatu egiten diote.

Gure ustez, egoera hau auzoko bizilagunei eta beste antolakundeei helarazi behar zaie, batasunaren eta elkartasunaren bidez, indar egin ahal izateko eta, gutxienez, Alde Zaharreko presoek jasaten duten ukapen eta ankerkeri bakoitza salatzeko.

Aurtengo lanari dagokionez mozio bat sartuko dugu Iruñeko udaletxean Marilo, Jokin eta egoera berdinean aurkitzen diren Iruñeko presoekin, hau da gaixotasun larriak eta kondenaren 3/4ak betea dutenekin.

Mozioaren aurkezpena helburutzat daukagu baina honetarako aurre lan sakona egin beharko dugu; auzoa informatuz eta gaia gizarteratuz. Lan hau gure ardatza izanik zuen belarrietara mezua iritzi behar da merkatarien belarrietara, tabernarienetara, elkarteenetara, auzokideenetara...

Eskatzen dizueguna sinplea da; dosier hau irakurtzea eta bukaeran datorren galdetegia betetzea, era honetan orain arte egindako kartelen kanpainari jarraipena emango diogu.

Ez dugu agurtu nahi gogora ekarri gabe zuon guztion laguntzaz harresitzar horien atzean bizi baldintzak eramangarriagoak izan daitezen lortzen ari garela. Dela zuen laguntzak presoek dauzkaten eskubide apurrak babesten dituelako, dela zuen elkartasunak babestuak eta maitatuak sentiarazten dituelako, aurrera egiteko kemena emanez. Hori dela eta, presoen eskubideen defentsaren aldeko zuen konpromisoan sakontzeko deia egiten dizuegu; "Marilo, Jokin etxera! Euskal presoak Euskal Herrira eskubide guztien jabe!" plataformaren izenpean egingo diren ekimenetan parte hartuz, zein aspalditik Etxerat presoen senideen elkarteak burutzen dituen ekimenetan parte hartuz, adibidez, ostiralero, arratsaldeko 8etan, Iruñeko Sarasate pasealekuan burutzen den enkarteladan.

Besarkada estu bat,

2007ko urriaren 26an - Iruñeko Alde Zaharra

* Edozein zalantza edo ekarpen duzuelarik jar zaitezte gurekin kontaktuan: aldezaharrera@gaztesarea.net

## Marilo, Jokin etxera! Euskal presoak euskal herrira eskubide guztien jabe!

Marilo, Jokin, Josetxo, Iñaki, Iñaki, Alberto, Jorge, Asier, Benito Fermín, Peio Alde Zaharreko bizilagunak dira eta euskal preso politikoen kolektiboa osatzen duten 658 hiritarren antzera, beraien bizilekutik urrunduta daude dispertsioaren eraginez, Espainiako eta Frantziako geografian zehar.

Espainiako eta Frantziako gobernuek kartzela eta zigor arloetan aurreko gobernuen ildo bera daramatela salatu beharra dago: zigorrak handitzea, sakabanaketa, isolamendua, komunikaziak murriztea, gaixo dauden presoen eskubideen urraketa, presoen hezkuntza eskubiderako eta euskararen erabilerarako trabak jartzea, espetxe zigorraren iraupenaren murrizketarako aukerak ezabatzea, legeak onartutako mesedeen aplikazioaren murrizketa kartzelatik ateratzea eragozteko asmoarekin... Neurri horiek, batetik, espetxeetako bizi baldintzak gogortzea bilatzen dute, eta, bestetik, preso dauden lagunek espetxean igaro behar duten denbora ahalik eta gehien luzatzea. Frantziako Estatuan legez indarrean den biziarteko kartzela zigorra bezala, Espainiako Estatuan praktikan norabide horretan ari dira.

Gertaera hauen larritasunaren aurrean, Alde zaharreko bizilagun batzuek auzoan salaketa dinamika bat pizteko beharra ikusi dugu, gure auzokideak diren hamar presoei aplikatzen zaizkien ondorengo eskubide urraketen berri emateko:

### TRATU DUIN ETA BEGIRUNEZKOA JASOTZEKO ESKUBIDEA:
Tortura eta tratu krudelik ez.
Ez isolamendurik, ez jipoirik.
Beren nazio zein kultur identitatearekiko begirunea.

### OSASUN ESKUBIDEA:
Osasun zainketa duina.
Konfiantzako sendagileen bisitak ere izateko aukera.

### KOMUNIKAZIO ESKUBIDEA:
Ez interbentziorik, ez murriztapenik.
Euskaraz ere komunikatzeko askatasuna.

### HIZKUNTZ ESKUBIDEA:
Euskaldun legez, beren garapen integrala euskaraz burutzeko askatasuna.

### HEZKUNTZA ESKUBIDEA:
Ikasteko trabarik ez.
Ikasketak euskaraz ere burutu ahal izateko aukera.

### AMATASUN ETA AITATASUN ESKUBIDEA:
Ama izateko eskubidea, duintasun osoz, emakume presoentzat.
Aitarekin komunikazioei trabarik ez.
Kartzela barruan umeen bizitza kalitatearen errespetua.

### ASKATASUNERAKO ESKUBIDEA:
Baldintzapeko askatasuna aplikatzea zigorraren 3/4 edota 2/3 bete dituzten presoei (epaitu zituzten kode penalaren arabera).
Legez dagozkien erredentzioak aplikatzea inolako diskriminaziorik gabe.
Larriki gaixo direnen berehalako kaleratzea.

### EUSKAL PRESO POLITIKOEN KOLEKTIBO GISA, EUSKAL HERRIAN ETA ELKARREKIN BIZITZEKO ESKUBIDEA:
Kolektiboak izendaturiko mintzakidetzaren aitortza.
Kolektibo gisa gainerako eragileekin harremanak izateko askatasuna.
Euskal gizartean eztabaida eta erabaki guneetan parte hartzeko aukera eta askatasuna.



## JOKIN SANTXO BIURRUN

4 urte ihesean (1985etik)
**Atxiloketa** data: 1989ko apirilaren 23a- Pau (Polizia Judiziala)
**18 urte** daramatza preso.
Estatu frantsesean lau urte preso egon ondoren Estatu espainiarrera **estraditatu** egin zuten 1993an.
Gaur egun Alde Zaharretik **216 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bideak: La Sante, Neuvic, Carabanchel, Alcala, Soto del Real, Valdemoro, Ourense, Dueñas eta Zuera.
Gaur egungo helbidea: **C.P. Zuera (Zaragoza) - Ctra. Nacional. 330, km. 539. 50800 Zuera - Zaragoza.**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Euskal preso politikoek sarritan errespeturik gabeko tratua jasotzen dute eta horrek umilazio egoerak sortzen ditu, izan ere, segurtasuna aitzakia harturik eguneko edozein ordutan katxeatu ditzakete euren ziegetan edo presoak beraiek. Katxeo hauetan presoen intimitatea erabat agerian uzten dute, edozein aitzakia baliatzen dute euren gauzak konfiskatzeko eta presoa bera desorekatzeko. Halaber, ohikoak dira (maiztasuna handiagoz edo txikiagoz, kartzelaren, funtzionario txandaren edo egoera politikoaren arabera) modulu edo ziega aldaketak, aldaketa hauek ere presoak desegonkortzea dute helburu (ohearen orientazio berria, modulu desberdina, kide desberdinak, funtzionamendu desberdina,...). Jokinek urriaren erdialdean, aurrez aurrekoa egitera zihoala araketa integrala egitera behartu zuten, hau da, goitik bera biluztu zuten.
Lehen gradua aplikatzen diotenez bere bizi baldintzak oso gogorrak dira. 4 ordu besterik ez dauzka patioan egoteko eta gainontzeko hogeiak bere ziegan pasa behar izaten ditu.

### osasunerako eskubidea

Aurtengo udaran gartzelako ura kutxatuta zegola espetxeko ehundaka presoek egunkariari ezker izan zuten berria, inor ez zien esan ura erabili ezin zutela, honen ostean egun batzuk ura gabe egon ziren. Horrenbesteko jendea dagoen leku batean urarik gabe egoteak osasun arrisku larriak ekar ditzake.

### komunikatzeko eskubidea

Bere komunikazio guztiak interbenituta dauzka (idatzizkoak, telefonozkoak, lokutorioan eta familiarteko aurrez aurrekoak) eta soilik 10 lagunek bisitatu dezakete Jokin, astean 40 minututan zehar. Astean 8 dei egin ditzake, 10 telefono zenbakitara, 5 minututan komunikatu ahal izateko. Gutunak normalean 3 hilabeteko atzerapenaz jasotzen ditu.
Amak ezin du semea bisitatu osasun arazoak direla eta. 2003an berea ama ikusi ahal izateko Iruñean bisita bat onartu zioten, baina ez zioten trasladorako baimenik eman, beraz, bisita hartatik aurtengo udan lehen aldiz ama ikusteko aukera izan du ordu batez, une guztian poliziaren aurrean bere ama-

ren etxean egonez.

### hezkuntzarako eskubidea

Historiako ikasketak eten behar izan zituen, 2003an Espetxeetako Zuzendaritza Nagusiak eta Espainiako Gobernuak euskal presoek Euskal Herriko Unibertsitatearen bidez ikasteko debekua ezarri zutelako. Orain UNEDen dago matrikulatuta, Historia karrera egiten dihardu, baina eskolako materialak jasotzen ohikoak diren atzerapenak eta arazoak jasan behar izaten ditu.

### askatasunerako eskubidea

Zigorraren 3/4ak bete ditu dagoeneko, beraz, 1973ko zigor kodeari dagokionez, hau da, zigor kode zaharra, baldintzapeko askatasunean egon beharko luke 2004ko urriaren 28tik.
** Ikus I. eranskina: Bizi osorako espetxe zigorra*

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Jokin bere jaioterritik 216 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuuro 6 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko, eta aipatzekoa da Jokini Euskal Herriratzea ukatu zutela bere ama ikusi al izateko, osasun arazoak direla eta emakumea ezin baitu bidaiatu.
Jokinen anaiak auto istripu bat izan Ourenseko kartzelara zihoanean, anaia bisitatzera. Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Jokinen kasuan hilean 400 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*





## MARILO GOROSTIAGA RETUERTO

**Atxiloketa** data: 1994ko abenduaren 18an-Iruñea (Guardia Zibila).
4 egun egon zen inkomunikatuta eta **torturak** salatu zituen.
**13 urte** daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik **86 kilometrora** dago.
Dispertsioaren bideak: Carabanchel, Valladolid eta Logroño
Gaur egungo helbida: **Prisión Provincial de Logroño - Apdo.0217 La Rioja - Logroño**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Arazo ugari izan du kanpoko medikuen kontsultetan zaintzen zuten poliziaren aurrean biluzteari ezetz esan diolako, bere intimitaterako eskubidea eta sekretu profesionalerako eskubideak urratzen direlako eta, ondorioz, medikuaren kontsultak bertan behera gelditu izan dira.

2006ko otsailean ginekologiako kontsultara joateko trasladoa Polizia Nazionalak egin zuen, oso modu txarrean eta gaixoari tratu iraingarria eman zioten. Aipatu beharra dago behin baino gehiagotan ohartarazi zietela gongoil axilar hustuketako ebakuntza jasan duen emakumeak goiko gorputz-adarrean jaso behar duen tratu bereziaz. Hau jakin arren gehiegizko indarra eragin zioten gorputz-adarretan, eta gainera esku-burdin estu-estuak jarri zizkioten. Presoak berak salatu zuen egoera hau trasladatzen zuten polizien aurrean eta liskarra izan zen bitartean bertan zeuden ospitaleko langileen aurrean, baina ezin izan zuten ezer egin polizien jarrera harroa eta txuleskoagatik.

Logroñoko kartzelak askoz preso gehiago hartzen ditu gaur egun dituen lekuak baino, horregatik elkarbizitza benetan zaila da batzuetan, areago, inoiz 3 preso egon izan dira bakar batentzako den ziega batean. 2007ko irailatik Marilo behartuta izan da preso arrunta batekin ziega banatzea, protesta gisa bi eguneko baraua burutu zuen, baraua bertan behera utzi behar izan zuen bere osasun egoeraren larritasuna dela eta, borroka molde hau bere bizitza arriskuan jartzen du. Ziega banatzeak, eskubide bat urratzeaz gain, Mariloren kasuan bere bizibaldintzen tentsonamendua areagotzea suposatzen du, eta egoera hau ez da batere onuragarria bere osasun egoerarako. Aipagarria da, era berean, modulu arrunt batean dagoen arren, bertan dagoen euskal preso politiko bakarra dela, eta honek babes falta handia suposatzen du berarentzat.

Euskal preso politikoek sarritan errespeturik gabeko tratua jasotzen dute eta horrek umilazio egoerak sortzen ditu, izan ere, segurtasuna aitzakia harturik eguneko edozein ordutan katxeatu ditzakete euren ziegetan edo presoak beraiek. Katxeo hauetan presoen intimitatea erabat agerian uzten dute, edozein aitzakia baliatzen dute euren gauzak konfiskatzeko eta presoa bera desorekatzeko. Halaber, ohikoak dira (maiztasuna handiagoz edo txikiagoz, kartzelaren, funtzionario txandaren edo egoera politikoaren arabera) modulu edo ziega aldaketak, aldaketa hauek ere presoak desegonkortzea dute helburu (ohearen

orientazio berria, modulu desberdina, kide desberdinak, funtzionamendu desberdina,...).

## osasunerako eskubidea

Duela bi urte minbizia zuen tumore bat aurkitu zioten eskubiko bularrean. Ebakuntza egin zioten eta 2005ko abuztuan radioterapia saioekin hasi zen. Halaber, umetokian bi mioma aurkitu zizkioten, eta gainera diabetesa, dislipemia mistoa eta hipertentsioa dauka.

Gaur egun, jasan dituen ebakuntzen ondorioz eskuineko eskua eta besoa hazita dauzka, baina ezin dute behar bezala artatu, errehabilitazio egoki baterako beharrezkoa den maiztasunaz Logroñoko ospitalera eramateko behar besteko poliziarik ez omen dagoelako. Aurtengo irailean, espetxean bertan fisioterapeutarekin bisita onartu zioten, baina egun oraindik ez da esandako bisita burutu, honetarako behar den aurrekontua Instituciones Penitenciarias delakoak onartu behar duelako

** Ikus II. eranskina: Marilo beraren idatzia (21. or.)*

** Ikus III. eranskina: mediku txostena (26. or.)*

** Ikus IV eranskina: osasunerako eskubidea (28. or.)*

## komunikatzeko eskubidea

Bere komunikazio guztiak interbenituta dauzka (idatzizkoak, telefonozkoak, lokutorioan eta familiarteko aurrez aurrekoak), astean 8 dei egin ditzake, 10 telefono zenbakitara, 5 minututan komunikatu ahal izateko (telefono konpainiaren kontratua eskatzen diote zenbaki hauetara deitzeko baimena emateko). Gutunak normalean hilabeteko atzerapenaz jasotzen ditu.

## askatasunerako eskubidea

2006ko abenduan Mariloren abokatuek 92. artikulua aplikatzeko eskatu zuen. Logroñoko kartzelan Marilo artatzen duten medikuen iritziz kartzelan egotea ez da berarentzat egokia, bere egoera larria zein den kontuan hartuta gerta daitezkeen konplikazioengatik. Reglamento Penitenciarioaren 196. artikulua aplikatzea gomendatzen dute, gaixotasun larriagatik eta kartzelatik ateratzea eskatzen dute. Baina aurtengo apirilaren 27an Logroñoko kartzelako Junta de Tratamientoak berak eskatutako baldintzapeko askatasuna ukatu egin diote. Uztailaren 31ean Mariloren eskaera bera ere ukatua izan zen.

Aipatzekoa da, askatasuna ukatzeko arrazoietako bat dela “Espetxeak neurri guztiak jartzen dituela bere reabilitazioa zuzena izateko”, baina hau erabat kontrajartzen da “Osasun eskubideak” atalean aipatutako gertaerekin.

** VI. gehigarria ikusi: Audientzia Nazionaleko Autoa (pag. 35)*

## Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Marilo bere jaioterritik 86 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuoro 2,5 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.

Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.

Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Mariloren kasuan hilean 80 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## JOSETXO ARIZKUREN RUIZ

18 urte ihesean (1981etik)
**Atxiloketa** data: 1999ko matxoaren 9an - París (CRSek)
Sei urte frantses estatuan preso egon ondoren 2006an estatu espainiarrera **estraditatu** zuten.
**8 urte** daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik **750 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bidak: Fleury, Saint Maur, Moulins, Marseille, Les Baumenes, Soto, Valdemoro, A Lama.
Gaur egungo helbidea:
**Centro Penitenciario Monte Raceo S/N. 36830. A LAMA. PONTEVEDRA.**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu Españoleko kartzeletan dagoenetik ia bakarrik eman du gartzelaldia. Isolamenduko moduluan dago, bakar bakarrik, ez arrunta ezta politikoekin. Lehenengo lehenengo fasean klasifikaturik dago, bizi baldintzak bereziki gogortzen dira. Paketetan bi ale artikulu bakaitzeko sartu dezakete bakarrik: bi praka, bi liburu... Moduloko kanpo ekintzetan ere murrizpenak egon dira eta patiora ateratzean eta sartzean detektore batetik pasatzera behartzen dute.
Euskal preso politikoek sarritan errespeturik gabeko tratua jasotzen dute eta horrek umiliazio egoerak sortzen ditu, izan ere, segurtasuna aitzakia harturik eguneko edozein ordutan katxeatu ditzakete euren ziegetan edo presoak beraiek. Katxeo hauetan presoen intimitatea erabat agerian uzten dute, edozein aitzakia baliatzen dute euren gauzak konfiskatzeko eta presoa bera desorekatzeko.

### osasunerako eskubidea

Hortzoi infekzio bat dela eta  dentistaren zain zegoen, baina espetxe aldaketa dela eta eskaera hasieratik burutu behar du infekzioa sendatu gabe denboran luzatuz.
Preso guztiak Euskal Herrian biltzea aldarrikatzeko 2001ean eginiko 56 eguneko gose grebaren ondorio fisiko larrien ondorioz urteetan zehar tratamentua jaso behar izan du.

### komunikaziorako eskubidea

Bere komunikazio guztiak interbenituta dauzka (idatzizkoak, telefonozkoak, lokutorioan eta familiarteko aurrez aurrekoak) eta soilik 10 lagunek bisitatu dezakete, astean 40 minututan zehar. Astean 8 dei egin ditzake, 10 telefono zenbakitara, 5 minututan komunikatu ahal izateko (telefono konpainiaren kontratua eskatzen diote zenbaki hauetara deitzeko baimena emateko). Hilean 4 gutun bidal ditzake.

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Josetxo bere jaioterritik 750 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuo 15 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Josetxoren kasuan hilean 680 euro dira.
** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## IÑAKI SANTESTEBAN GOIKOETXEA

15 urte ihesean (1985etik)
**Atxiloketa** data: 2000ko iraila- Sara (CRSek)
**7 urte** daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik **660 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bideak: La Santé, Fleury, Bogüarsi, Fresnes, Perpignan eta Maguelone
Gaur egungo helbidea: **(28 207) Maison de A´rret. Avenue Moulin de la Jasse. 34.753 Villaneuve-lés-maguelone. France.**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu frantseseko kartzelak ezagunak dira bertan dagoen bizitza erregimen militarizatuagatik. Iñakik 22 ordu pasatzen ditu bere ziegan eta 2 ordu besterik ez ditu patioan egoteko. Bisita batetik bueltatzen den bakoitzean goitik behera katxeatu egiten dute. Gaur arte kartzelako funtzionarioek bi aldiz jipoitu dute. Iñaki espetxe honetan dagoen euskal preso politiko bakarra da. honek babes falta handia suposatzen du berarentzat.
2008ko apirilean Iñaki Frantzia ezarritako zigorra betetzen amaitu eta arriskua dago Estatu Espainolera entregatua izateko.

### komunikatzeko eskubidea

Abuztutik Iñaki bisitarik gabe dago, aurreko kartzelan ez zituen izan Mitard-ean egon zelako (zigor moduloan), Mitard-ean egoteko arrazoia preso arrunt batekin ziega banatzeari uko egitea izan zen. Bisitak kartzelak erabakitako egunean izan behar dira, familiarrei oztopoak gehituz.
Iñaki kondenatua egon arren, hau da, dagoeneko epaitua izan arren, prebentiboentzako espetxe batean daukate, hau dela eta telefono deiak egitea ukatzen diote. Familiarekin ohiko lokutorioetatik at aurrez aurreko komunikazioak izateko eskubiderik ez dauka. Posta interbeniturik dauka eta atzerapen luzearekin jasotzen ohi ditu.

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Iñaki Iruñetik 660 kilometrora dago, bere senide eta lagunek astebururo 23 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.,
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Iñakiren kasuan hilean gutxienez 600 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## IÑAKI BEAUMONT ETXEBERRIA

**Atxiloketa** data: 2000ko azaroaren 24a - Iruñea (Polizia Nazionala)
Inkomunikatuta egon zen 3 egun ondoren **torturak** salatu zituen.
**7 urte** daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik **803 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bideak: Soto del Real, Alcalá, Albolóte (Granada).
Gaur egungo helbidea: **Centro Penitenciario de Albolote - Carretera Colomera km 16,5. Apdo 2062 - 18.080 Albolote - Granada.**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

#### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Beste hamaika preso politikoekin batera dago isolamenduko moduluan lehen graduan klasifikatutak.
Euskal preso politikoek sarritan errespeturik gabeko tratua jasotzen dute eta horrek umilazio egoerak sortzen ditu, izan ere, segurtasuna aitzakia harturik eguneko edozein ordutan katxeatu ditzakete euren ziegetan edo presoak beraiek. Katxeo hauetan presoen intimitatea erabat agerian uzten dute, edozein aitzakia baliatzen dute euren gauzak konfiskatzeko eta presoa bera desorekatzeko. Iñakiri zenbaitetan katxeoak egin ondoren epailearen baimena erakutsi izan diote.

#### komunikatzeko eskubidea

Bere komunikazio guztiak interbenituta dauzka (idatzizkoak, telefonozkoak, lokutorioan eta familiarteko aurrez aurrekoak) eta soilik 10 lagunek bisitatu dezakete Iñaki, astean 40 minututan zehar, astean 8 dei egin ditzake, 10 telefono zenbakitara, 5 minututan komunikatu ahal izateko (telefono konpainiaren kontratua eskatzen diote zenbaki hauetara deitzeko baimena emateko). Astean bi gutun baino ezin ditu bidali.

#### hizkuntza eskubideak

Euskaraz jasotzen dituen gutunak oraindik eta atzerapen handiagoz iristen dira, gaztelaniazkoak baino. Irakasle eskolako euskarazko ikasketak bertan behera utzi behar izan zituen 2003an Espetxeetako Zuzendaritza Nagusiak eta Espainiako Gobernuak presoek EHUren bidez ikastea debekatu zutelako.

#### hezkuntzarako eskubidea

Gizarte-hezkuntza ikasten ari da UNEDen. Ikas materialak oso berandu iristen zaizkio eta ez dauka tutoriarik.

#### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Dispertsioaren ondorioz bere senide eta lagunek hiru auto istripu izan dituzte. Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Iñakiren kasuan hilean gutxienez 800 euro dira.
Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Iñaki Iruñetik 803 kilometrora dago, bere senide eta lagunek astebururo 16 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## ALBERTO ILUNDAIN IRIARTE

11 urte ihesean (1990etik)
Atxiloketa data: 2001eko irailaren 23an - Pau (CRSek)
6 urte daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik 660 kilometrora dago.
Dispertsioaren bideak: La santé, Fleury eta Saint Maur
Gaur egungo helbidea: (42 62H) Maison Centrale 36255 Saint Maur Cedex

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu frantseseko kartzelak ezagunak dira bertan dagoen bizitza erregimen militarizatuagatik. Albertok 16 ordu pasatzen ditu bere ziegan eta 8 ordu ditu patioan egoteko. Bisita batetik bueltatzen den bakoitzean goitik behera katxeatu egiten dute. Fleuryko funtzionarioekin hainbat tentsio une izan ditu.

### komunikatzeko eskubidea

Frantses estatuko kartzela guztietan bezala, Albertok ez du familiarekin aurrez aurreko komunikazioak izateko eskubiderik.

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Alberto Iruñetik 660 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuto 20 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Albertoren kasuan hilean gutxienez 550 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## JORGE OLAIZ RODRIGUEZ

Urte bete ihesean (2000tik)
**Atxiloketa** data: 2001eko azaroaren 26an - Iruñea (Guardia Zibila)
Inkomunikatuta egon zen 5 egunen ondoren **torturak** salatu zituen.
**6 urte** daramatza preso.
Gaur egun Alde Zaharretik **420 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bideak: Valdemoro
Gaur egungo helbidea: **Centro Penitenciario Madrid III - Carretera de Pinto a San Martin de la Vega, km 5 - 28.340 Valdemoro (Madrid)**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Euskal preso politikoek sarritan errespeturik gabeko tratua jasotzen dute eta horrek umilazio egoerak sortzen ditu, izan ere, segurtasuna aitzakia harturik eguneko edozein ordutan katxeatu ditzakete euren ziegetan edo presoak beraiek. Katxeo hauetan presoen intimitatea erabat agerian uzten dute, edozein aitzakia baliatzen dute euren gauzak konfiskatzeko eta presoa bera desorekatzeko.
Lehen gradua aplikatzen diotenez bere bizi baldintzak oso gogorrak dira. 4 ordu besterik ez dauzka patioan egoteko eta gainontzeko hogeiak bere ziegan pasa behar izaten ditu.

### komunikatzeko eskubidea

Bere komunikazio guztiak interbenituta dauzka (idatzizkoak, telefonozkoak, lokutorioan eta familiarteko aurrez aurrekoak) eta soilik 10 lagunek bisitatu dezakete Jorge, astean 40 minututan zehar, astean 8 dei egin ditzake, 10 telefono zenbakitara, 5 minututan komunikatu ahal izateko (telefono konpainiaren kontratua eskatzen diote zenbaki hauetara deitzeko baimena emateko). Astean 3 gutun bidal ditzake. Familiarekin dituen aurrez aurrekoak astean zehar jartzen dizkiete eta honek areagotu egiten du egoera, lan egunetan egin behar izaten dutelako bidaia.

### hizkuntza eskubideak

Irakasle eskolako euskarazko ikasketak bertan behera utzi behar izan zituen 2003an Espetxeetako Zuzendaritza Nagusiak eta Espainiako Gobernuak presoek EHUren bidez ikastea debekatu zutelako. (hezkuntzarako eskubidea)
Une honetan Informatika ikasten ari da UNEDen bitartez, baina ez dauka ordenagailurik, ezartzen dioten baldintza delako barneko modemik ez duen ordenagailua izatea; ordenagailu mota hau zaharkituta gelditu da eta ez dira merkatuan aurkitzen. Ikasketak ezin ditu behar bezala egin liburuak atzerapen handiz jasotzen dituelako.

### derecho a vivir en Euskal Herria

Jorgeren senideek hilero 8 orduko bidaia egin behari zaten dute (joan eta etorri), lan egunetan, ordu eta erdiko aurrez aurrekoaz disfrutatu ahal izateko. Euskal Herrian egoteko eskubidea urratuko ez balitzaio, desgaste ekonomiko gehigarri hau galarazi zitekeen, izan ere euren senideek hilean behin lana utzi behar izaten dute.
Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Bere senide eta lagunek astebururo bere jaioterritik 420 kilometroko bidaia egin behar izaten dute berarekin 40 minutu egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Jorgeren kasuan hilean 400 euro dira.
** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## ASIER ARANGUREN URROTZ

Urte bete ihesean (2002tik)
**Atxiloketa** data: 2003ko maiatzaren 8an - Saintes (CRSek)
**4 urte** daramatza espetxan epaitua izan gabe.
Gaur egun Alde Zaharretik **911 kilometrora** dago.
**Dispertsioa**ren bideak: Fleury eta Nanterre
Gaur egungo helbidea:: **(28447) Maison d´arrêt des hauts de Seine 133, av. De le commune de Paris. Nanterre**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu frantsesean, epaitu aitzineko kartzelak ezagunak dira bertan dagoen bizitza erregimen militarizatuagatik. Asierrek 21 ordu pasatzen ditu bere ziegan eta 3 besterik ez ditu patioan egoteko. Bisita duen bakoitzean goitik behera katxeatu egiten dute. Fleury Merogisetik Nanterrera bidali izanaren arrazoia, Fleuryko kartzelako zuzendaritzaren aurka ebazpen judiziala irabazi izana da. Izan ere, lokutorioek frantses legediak ezartzen dituen baldintzak betetzen ez baitzituen.

### komunikatzeko eskubidea

Frantses estatuko prebentiboen kartzela guztietan bezala, Asierrek ez du telefonoz deitzeko eskubiderik ez eta familiarekin ohiko lokutorioetatik at aurrez aurreko komunikazioak izateko eskubiderik. Lagun askok ez dute bera ikusteko baimenik. Korrespondentzia interbenituta dauka. Paketean sartzen zaizkion gauzetan ere murrizketak dauzka.

### hezkuntzarako eskubidea

Komunikazioaren zientziak ikasten ari da EHUn. 2007ko irailetik ordenagailua badu ziegan. Ez du tutoretzarik.

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Asier Iruñetik 911 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuero, gutxienez 23 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta. Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Asierren kasuan hilean gutxienez 1.200,00 euro dira.

** Ikus gehigarria: Sakabanaketa politika*



## BENITO FERMÍN MARTINEZ BERGARA

25 urte ihesean (1979tik)
**Atxiloketa** data: 2004ko ekainaren 17an. (CRSek)
**3 urte** daramatza espetxean
Gaur egun Alde Zaharretik **880 kilometrora** dago.
**Dispertsio** bideak: Fleury, Osny
Gaur egungo helbidea: **(42956) Maison d´arrêt du Val d´Oise - Route départementale N 927 03.401 Yzeure Cédex**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

#### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu frantseseko kartzelak ezagunak dira bertan dagoen bizitza erregimen militarizatuagatik. Ferminek 21 ordu pasatzen ditu bere ziegan eta hiru ordu besterik ez ditu patioan egoteko. Bisita batetik bueltatzen den bakoitzean goitik behera katxeatu egiten dute.

#### komunikatzeko eskubidea

Frantses estatuko kartzela guztietan bezala, Ferminek ez du telefonoz deitzeko eskubiderik ez eta familiarekin aurrez aurreko komunikazioak izateko eskubiderik. Korrespondentzia interbenituta dauka eta atzerapen handiz jasotzen du.

#### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Fermin Iruñetik 880 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuoro 18 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Benitoren kasuan hilean gutxienez 520 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*



## PEIO SANTXEZ MENDAZA

**Atxiloketa** data: 2005eko martxoaren 31ean (CRSek)
**2 urte** daramatza preso (aurrez beste urte bat egin zuen espetxean)
Gaur egun Alde Zaharretik **911 kilometrora** dago.
**Dispertsio** bideak: La santé
Gaur egungo helbidea: **(284 844 DI-146) Maison d'arrêt - 42, rue de la Santé - 75.674 Paris Cédex**

### URRATZEN ZAIZKION ESKUBIDEAK:

### duintasunezko eta errespetuzko tratua jasotzeko eskubidea

Estatu frantseseko kartzelak ezagunak dira bertan dagoen bizitza erregimen militarizatuagatik. Peiok 21 ordu pasatzen ditu bere ziegan eta ordu 3 besterik ez ditu patioan egoteko. Bisita duen bakoitzean goitik behera katxeatutzen dute. Noizbehinka ziega aldaketak izaten ditu.

### komunikatzeko eskubidea

Frantses estatuko kartzela guztietan bezala, Peiok ez du telefonoz deitzeko eskubiderik ez eta familiarekin aurrez aurreko komunikazioak izateko eskubiderik. Korrespondentzia interbenituta dauka eta atzerapen handiz jasotzen du.

### hezkuntzarako eskubidea

Magisteritza ikasketak burutzen ari da UPVn. Ez du tutoria zuzenik egiteko aukerarik, ondorioz, idatziz egin behar izaten ditu, horrek suposatzen duen atzerapen eta komunikazio galerarekin.

### Euskal Herrian bizitzeko eskubidea

Presoek eskubidea dute euren jaioterritik gertuen dagoen kartzelan egoteko. Peio Iruñetik 911 kilometrora dago, bere senide eta lagunek asteburuoro 23 orduko bidaia egin behar izaten dute (joan eta etorri) berarekin egon ahal izateko.
Dispertsioak dagoeneko 15 senide hil ditu, 2007an dagoeneko 13 kotxe istripu izan dira, istripu hauetan 24 pertsona izan dira maila ezberdinetan zauriturik, haien artean pasa den maiatzaren 31ean Peioren neskalaguna. Halaber, 22 preso kartzelan hil dira dispertsioa eta jasan behar izan dituzten bizi baldintza gogorrak direla eta.
Presoak bisitatu ahal izateko dispertsio politikak sortzen dituen galera ekonomikoak izugarriak dira. Peioren kasuan hilean gutxienez 800 euro dira.

** Ikus V. eranskina: Sakabanaketa politika (32. or.)*

# BIZI OSORAKO ESPETXE ZIGORRAK

Ikusi ahal denez, espainiar Estatuak, azken hamar urte hauetan, ahalegin berezia egin du, Gobernuan PP ala PSOE egon, euskal preso politikoen espetxe zigorra luzatzeko. Bizi osorako espetxe zigorra indarrean jartzeko. Frantziar Estatuak bide bera hartu du espetxe zigorrak gogortuz nahiz 15 urtez preso egon ostean beraien legediak jasotako eskakizunak beterik ere, euskal preso politikoei askatasuna ukatuz.

## Bizi osorako espetxe zigorrak aplikatzeko egin dituzten aldaketak

Azken urte hauetan, hainbat lege aldaketa egin dituzte espainiar eta frantziar estatuek, beti ere, praktikan bizi arterainoko espetxe zigorra aplikatzeko. Aldaketa hauek atalka azalduko ditugu.
Batetik, espainiar Estatuak egin dituen aldaketak. Aldaketa hauen artean, 1973ko zigor kodea, 1996ko zigor kodea, 2003ko erreforma eta 2006an Entzutegi Gorenak kaleratutako 197/2006 sententzia aipatuko ditugu.
Bestetik, frantziar Estatua aztertuko dugu. Bertan, frantziar Estatuan legeztatuta dagoen bizi osorako zigorraldia eta, egin berri dituzten lege aldaketak aipatuko ditugu.

### Espainiar Estatuak egin dituen aldaketak:

• 1973ko espainiar Estatuko zigor kodearen arabera, pertsona batek, jarraian, gehienez 30 urte igaro zitzakeen espetxean. Espetxe zigorra txikitzeko, berriz, bi aukera zituen:
Batetik, erredentzioen bitartez, hau da, kartzelan ikasiz, aktibitateak eginez, ekitaldi kulturaletan parte hartuz... Horrenbestez, 20 urtetako espetxe zigorra izanik, erredentzioei esker, 15 urte igarota kaleratzea posible zen, esaterako. Erredentzioak lortzeko, ordea, euskal preso politikoek beste presoek baino zailtasun handiagoak izaten zituzten: kartzelak erredentzioak lortzeko mota guztietako trabak jartzen zizkien, arbitrarioki eta behin eta berriro zigortzen zituzten, ondorioz, erredentzioak eskuratzeko aukerarik gabe utziz.
Bestetik, zigorren 3/4ak bete ostean, teorian, kaleratzeko aukera zegoen. Zigorraren 3/4ak, espetxean igaro beharreko urteetatik kalkulatzen ziren. Euskal preso politikoei, ordea, 3/4ak bete ostean kaleratzeko aukera hau sistematikoki ukatu egin izan zaie.

• 1996. urtean, zigor kode berria jarri zen indarrean. Zigor kode berri honetan erredentzioak desagertu egin ziren. 1996ko zigor kodearekin kondenatutakoak ezarritako espetxe zigorra osorik betetzera behartu zituzten. Hau da, 1973ko zigor kodearekin 20 urteko espetxe zigorra zuenak 15 urte igaro ostean, lortutako erredentzioei esker, kaleratu ahal zen. 1996ko zigor kodearekin, ordea, 20 urteko espetxe zigorra duena 20 urtetan espetxean egotera kondenatu nahi dute.
Halaber, Euskal Herriarekin duten gatazka politikoari lotutako zigorrak gogortu egin zituzten.
3/4ak betetakoaz gain, 2/3ak betetakoan ere kaleratzeko aukera aurreikusi zuten. Euskal preso politikoei, ordea, bata zein bestea ukatzen jarraitzen diete.

• 2003. urtean, 1996ko zigor kodeari erreformak egin zizkioten. Batetik, Euskal Herriarekin duten gatazka politikoaren ondorioz espetxeratutakoentzat, espetxe zigor topea 30 urtekoa izatetik 40 urtekoa izatera pasa zen.
Halaber, espetxe zigorraren 3/4ak edo 2/3ak espetxe zigor topetik baino kondena osoetatik kalkulatzen hasten dira, hau da, lehen bezala 30 urteetatik kalkulatu beharrean, jasotako kondena guztietatik kalkulatzen hasten dira. Praktikan, ordea, euskal preso politikoei 3/4ak edo 2/3ak beteak izan ostean kaleratzeko aukera ukatzen jarraitzen diete.
2003ko erreformarekin, euskal preso politikoei zuzenean eragiten dien beste salbuespeneko neurri bat jarri dute indarrean: Zaintza Epaitegi Zentrala. Ordura arte, herrialdeko zaintza epaileari zegokion presoen bizi baldintzetaz, erredentzioez...erabakiak hartzea. Erreforma hau egin ostean, ordea, Zaintza Epaitegi Zentraleko epaileak hartzen ditu erabaki horiek guztiak. Ordura arte ere, herrialdeetako zaintza epaileak Gobernuaren esanetara makurtuta ziren. Gobernuaren gustukoa izan ez zen erabakiren bat edo beste ere hartu zuen, ordea, zaintza epaileren batek eta, halako erabakiak saihesteko, dena guztiz kontrolatuta izateko eta euskal preso politikoen aurkako neurri berriak bertatik bultzatzeko sortu zuten Auzitegi Nazional espainiarrean kokatuta dagoen Zaintza Epaitegi Zentrala.

• 2006an Entzutegi Gorenak kaleratutako 197/2006 sententzia: bizi osorako zigorraldia jada ezarria izan arren espetxe zigor topea 40 urtetaraino igoz, erredentzioak kenduz, 3/4ak edo 2/3ak betetakoak ez askatuz... 1973ko zigor kodearekin epaitutako hainbat euskal preso politiko kaleratzear ziren, urteak eta urteak 10, 15, 20 25... urte preso, urrundurik, bizi baldintzarik gogorrenetan... igaro ostean, ezin zielako 1996ko zigor kodea edo 2003ko erreforma aplikatu. Horren aurrean, eta beti ere euskal preso

politikoak bizi osorako zigortu asmoz, 2006ean Entzutegi Gorenak 197/2006 sententzia kaleratu zuen.
Sententzia horrekin egin dutena ondokoa izan da: sententzia hori kaleratu aurretik, kondena guztiak bildu egiten ziren. Hau da, euskal preso politiko bati hamar urteko espetxe zigor bat, bost urteko beste espetxe zigor bat eta hogei urteko beste espetxe zigorra ezarri ostean, 35 urteko espetxe zigorra zuen. Espetxe zigor topea, 2003. urte arte 30 urtekoa izanik, 30 urte igaro zitzakeen gehienez espetxeraturik. Eta, halaber, erredentzioen bitartez, espetxe zigor hori txikitu zezakeen.
Entzutegi Gorenak 197/2006 sententzia kaleratu ostean, ordea, euskal preso politikoei espetxe zigorrak kondenaz kondena betetzera behartzen hasi dira. Hau da, aurrena hamar urteko espetxe zigorra bete behar du, ondoren, bost urtekoa eta gero 15ekoa. Praktikan espetxe zigorrak luzatu egin dituzte, momentuz, preso horiek, 30 urtez espetxeraturik mantendu nahian.

Frantziar estatua:
• Hasteko, frantziar Estatuan bizi osorako zigorraldia legeztatua dagoela esan behar dugu, hau da, frantziar Estatuko legediak pertsona bat bizi osorako espetxe zigorrera kondenatzea jasotzen du. 15 urte espetxean igaro ostean, ordea, pertsona hori askatu egin behar dute, lanpostua eta etxebizitza ziurtatua dituela baieztatuz gero. Hala dio beraien legeak. Momentu hauetan, Frederic Haramboure, Jakes Esnal eta Jon Parot ditugu bizi osorako zigortuta. Jon Parotek espetxeraturik 15 urte baino gehiago daramatza. Halaber, kalean etxebizitza eta lanpostua ziurtatuta ditu eta, ondorioz, kaleratzeko exijitu zuen iaz. Eskaera horri aurten ezezkoarekin erantzun diote, arrazoi politikoak medio. Aurten askatu dutena Filipe Bidart izan da, herri erantzuna gogortu ostean.

Halaber, frantziar Estatuan ere euskal preso politikoak ahalik eta denbora luzeenaz espetxeraturik mantentzeko lege berriak onartu dituzte. Perben I eta II legeak eta onartu berria den Sarkozy legea. Azken lege honekin, Euskal Herriak frantziar eta espainiar estatuekin duen gatazka politikoari loturiko aferekin erlazioa duten prozedura guztiak kriminal bezala kalifikatuko dira eta espetxe zigorrak 10 urtetik 20ra pasako dira ETAko kide izateaz akusatutakoentzat. Halaber, 20 eta 30 urte arteko espetxe zigorrak ezarriko dizkiete ETAko zuzendari izateaz akusatzen dituztenak, beti ere Parisko 14. sekzioan.

## Espetxe zigorraren 2/3ak edo 3/4ak beteta dutenak

Espainiako espetxeetan dituzten 144 euskal preso politikok baldintzapeko askatasunean aske geratzeko ezarritako zigor denbora beteta zuten 2007. urte hasieran. Egunak aurrera joan ahala, geroz eta gehiago dira zerrenda horretan direnak. Alde zaharraren kasuan Jokin Santxo Biurrun auzokidea dago egoera honetan. Jokin kalean egon beharko litzateke 2004ko urriaren 28tik espainiar legeak berak dagozkion erredentzioak aplikatu izan balizkio. , Egin dioten zigoarraren azken likidazioaren arabera, ordea, 2009an aterako da kalera.

## Entzutegi Gorenaren 197/2006 sententzia aplikatu ostean preso jarraitzen dutenak

14 euskal preso politikori jada Entzutegi Gorenaren 197/2006 sententzia aplikatu diete eta, ondorioz, espetxe zigorra oso-osorik bete arren, bahiturik mantentzen dituzte. Halaber, beste hainbat presori, kondena oso-osoa betetzean aipatu sententzia aplikatuko dietela jakinarazi diete. Ondoko 14 euskal preso politikoak preso mantentzen dituzte, 197/2006 sententzia aplikatu ostean, espetxe zigorra oso-osorik beteta izan arren.

# MARILO GOROSTIAGAren idatzia

*Logroñoko espetxetik- 2007ko maiatzaren 20an*

Kaixo sé que os estáis preocupando mucho por mi y que trabajáis a fondo para que mi situación mejore, eskerrik asko.

Actualmente me encuentro de nuevo sola tras un periodo de unos 9 meses con Amatei, que salió en libertad. También pasé sola el diagnóstico de mi cáncer y las dos operaciones, aquí en Logroño. Las sesiones de radioterapia fueron en Iruña y para ello me trasladaron allí durante 5 meses, donde también estaba sola pero al lado de casa...!

Aunque de mujeres solo estoy yo, en total somos 6 kides, entre ellos Txomin, mi pareja, que durante este proceso me ha dado apoyo, fuerza y maitasuna, lo que ha hecho llevar mejor esta situación.

Del trato médico no me puedo quejar, lo cierto es que, dentro de las limitaciones de la cárcel, me atienden muy bien, el problema es que, por ejemplo no siempre consiguen que te lleven a las consultas programadas porque no viene la policía.

En Iruña he tenido problemas con la policía, que que en ocasiones no se conforman con estar en la consulta sino que quieren verme directamente cuando estoy desnuda incluso en consultas ginecológicas, lo que ha generado discusiones o no realizar la consulta en condiciones pues yo me niego a desnudarme si está la policía, aunque sea mujer y la oncóloga no puede verme el pecho. Tras una discu

sión incluso con la psicóloga llegarón a decirme que yo "no tenía derecho a nada". En la siguiente salida, por venganza, me esposarón a la espalda, a pesar de las recomendaciones médicas, pués no puedo llevar nada ajustado en el brazo derecho. Al esposarme, a la espalda y por mi tamaño, los grilletes se me clavarón en las manos como medio centímetro, a raiz de eso me apareció el linfedema.

La médico de Logroño pensó en pedirme la libertad el verano pasado pero al parecer le dijeron que "no era el momento".

Estando en Nanclares, el 21 de diciembre 2006, nos vinieron a toda prisa, a Bautista también, en el traspe del medio día para que autorizara usar mis informes médicos y para que dijera donde iba a vivir — incluso llamaron ese mismo mediodía para confirmarlo — ya que iban a pedir el art. 104.4, para salir en libertad por enfermedad por indicación "de Madrid", hicieron todo esa misma tarde y me dijeron que iba a ir "volando". Después ocurrió lo de Barajas..., y cuando pasó el plazo de 2 meses para responder no lo hicieron, en ningún sentido, me enteré de que habían decidido "en Madrid" tomarse otros 2 meses para decidir.

Como paralelamente nuestros abokatus habían pedido al Juez de Vigilancia Penitenciaria la libertad por enfermedad para mi y varios compañeros, al parecer al pedir el juez informes a la cárcel en mi caso lo hizo cuando ya ésta había pedido el art. 104.4 y así se lo dijo al

juez por lo que, de momento, no desestimó el recurso como había hecho con Bautista y otro compañero, y pidió un informe forense y otro a la cárcel, un protocolo de progresión de grado o algo así. El 26 de abril por la mañana me llevaron al forense que me examinó y me hizo todo tipo de preguntas, incluso sobre mi condena, quería sobre todo saber si hacía una vida "normal" en la cárcel. Por la tarde me entregaron, al fin la revisión de grado, continuación en 2º grado, o sea "ellos" proponen la libertad y "ellos" la deniegan. Ahora estoy esperando la resolución del juez aunque no tengo muchas esperanzas.

Sobre cómo me siento pues bueno, yo suelo decir que bien, no me gusta quejarme, algo peleándome con mis enfermedades, ya veremos quien gana. Anímicamente he pasado unos días malos, yo que soy de natural positivo y optimista después de que me notificaron que no me daban la libertad, a pesar de esperarlo - aquí siempre se espera lo peor - fue un palo ..., nos pusieron el caramelo en la boca y luego nos lo han quitado, jugando con nuestra salud. Sabemos que somos rehenes, moneda de cambio y así nos usan, el 21 de diciembre estábamos enfermos como para pedirnos la libertad y ahora, que seguimos igual de enfermos, dicen que no. En fin, quizá sí estaba algo deprimida pero sobre todo cabreada, más que nada conmigo misma

porque parece mentira que a mis 31 años siga teniendo un punto de ingenuidad al creer que a los políticos les queda algo de ética, viendo lo que vamos día a día. Poco a poco se me va pasando y vuelvo a mi habitual carácter, supongo que ayuda el tener muy asumido el porque estoy aquí y el no perder la esperanza – es difícil eh?– de que el proceso avance, y seguir luchando para que Euskal Herria tenga el futuro que se merece. Gora Euskadi Askatuta! Amnistia osoa!

Mariló

Logroñoko espetxean, 2007, maiatzaren, 20

Mª DOLORES GOROSTIAGA C.P. LOGROÑO

- OBESIDAD MORBIDA
- OPERADA 2 VECES DE CARCINOMA DUCTAL INFILTRANTE DE MAMA DERECHA; 1ª VEZ, TUMORECTOMIA EL 29 ABRIL 2005; 2ª VEZ, AMPLIACION DE ZONA DE TUMORECTOMIA MAS LINFADENECTOMIA AXILAR DERECHA, EL 1 DE JULIO 2005, EN LOGROÑO
TRATAMIENTO POSTERIOR 25 SESIONES DE RADIOTERAPIA EN EL HOSPITAL DE NAVARRA.
TRATAMIENTO ACTUAL TAMOXIFENO DURANTE 5 AÑOS
REVISIONES SEMESTRALES
- LINFEDEMA BRAZO DERECHO, POR EXTIRPACIÓN DE GANGLIOS AXILARES, PRECISA DRENAJE LINFATICO, PERO SOLO ME HAN DADO 6 DE LAS 15 PROGRAMADAS POR "FALTA DE POLICIA PARA LLEVARME".
- DIABETES MELLITUS TIPO II
- ESTEATOSIS HEPATICA
- DISLIPEMIA
- 3 MIOMAS UTERINOS. QUISTE FUNCIONAL EN OVARIO. SON NECESARIAS REVISIONES SEMESTRALES YA QUE EL TRATAMIENTO CON TAMOXIFENO INCREMENTA EL RIESGO DE CÁNCER DE ENDOMETRIO
- GLAUCOMA
- PERDIDA AUDICION - 75% - OIDO DERECHO. ACÚFENOS.
- FISURA ANAL, PENDIENTE DE OPERACION DESPUES DE HACERME UNA COLONOSCOPIA, TENGO VARIOS ANTECEDENTES FAMILIARES DE CÁNCER DE COLON.
- VARICES

# INFORME MEDIKUA

Dolores GOROSTIAGA RETUERTO
Centro Penitenciario de LOGROÑO. Calleja Vieja 200. 26006 LOGROÑO

Barakaldon jaio zen 56/05/3an baina Iruñeko bizilaguna da. 1994ko abenduaren 18an atxilotu zuten bere ohiko lantokian. Ordutik hona kartzela hauetan egon izan da: Carabanchel, Villanubla Valladoliden, Logroño, Iruñea eta Logroño berriro ere, 2006ko urtarrilaren 10etik gaur egun arte.

Guardia Zibilaren eskuetan atxilotuta egon zen bitartean tratu txar fisiko eta psikologikoak jasan izan zituen eta epaitegian hau salatu zuen.

Kartzelan dagoenetik hainbat gaixotasun kroniko dauzka eta aipagarrienak Arteria Hipertentsioa (HTA), Mellitus Diabetesa (DM-II) eta Dislipemia Mistoa dira.

1998ko apirilean, Kartzelako Zaintza Epaitegian salaketa bat jarri zuen Valladolideko Ospitaleko Ginekologia Zerbitzuan ohiko kontsulta batean jaso zuen tratu iraingarriagatik. Salaketa hau "Emakunde"ra eta Nafarroako eta Valladolideko Mediku Elkargoetara iritsi zen, non Mediku Deontologia Batzordeen aurrean idatzizko kexua aurkeztu zen, gaixo batek jasandako tratua dela eta, intimitaterako eta sekretu profesionalerako eskubideak urratu zirelako.

1998ko azaroan Valladolideko Kartzelako Zaintza Epaitegiak auto baten bidez baimena eman zuen kartzelaz kanpoko medikuek Marilo aztertzeko. Konfidantzazko medikuekin egin zituen kontsultak 1999 urtean zehar izan ziren, Espetxeetako Zuzendaritza Nagusiak inolako arazorik jarri gabe.

Logroñon dagoeneko, eta 2001eko urtarriletik aurrera otitis errepikakorrak hasi zitzaizkion eta hauen ondorioz Tinpanoko Drainatze Tenporalak (DTT) jarri behar izan zizkioten, eta prozesu hauen ondorioz sorturiko ondorio txarretako bat eskuineko belarrian Transmisio Hipoakusia da.

2003ko otsailean kartzelaz kanpoko medikuek bisita ditzatela eskatu zuen berriz ere. 2003ko ekainean kartzelako zuzendaritzak baimen hau ukatu egin zion. Konfiantzazko medikuak artatzeko eskubidea urratzen dela eta, kexa aurkeztu zen Kartzelako Zaintza Epaitegian.

2003ko azaroan oftalmologoak egindako errebisio batean Begi Barruko Tentsioa handitu zela antzeman zioten, eta Glaukoma bat garatzeko arriskua zegoen.

Dauzkan gaixotasun kronikoak zeintzuk diren kontuan hartuta eta bere osasunerako zein arriskutsua izan zitekeen jakin arren, 2004ko urrian Euskal Preso Politikoen Kolektiboak egin zuen gose greban parte hartu zuen, euren eskubideen defentsan. 10 egun eman zituen ezer jan gabe.

2005eko urtarrilean kontrolatzeko mamografia bat egin zioten Logroñoko San Millán Ospitalean. Gaiztoa izan zitekeen nodulo bat aurkitu zioten eskuineko bularrean. Azterketa osagarria egitea proposatu zuten, puntzio-biopsia baten bidez.

05/02/25ean Anatomia Patologikoko emaitzak ezagutu ziren. Bertan Kartzinoma bat egoteko aukera aipatu zen eta ebakuntza egitea proposatu zen. Egoera honen aurrean Iruñeako Bideko Ama Ospitaleko Ginekologia Zerbitzura informazio hau emateko tramiteak hasi ziren, Kirurgia Zerbitzuarekin batera kasua bere gain har zezaten.

05/03/15ean Madrileko Kartzelako Zaintza Epaitegi Zentralean Iruñeko kartzelara BEHIN-BEHINEKO TRASLADOA eskatu zen, Iruñeko Bideko Ama Ospitalean Iqca eta tratamenduarekin hasteko. Eskaera hau LOGPren 3. artikuluan eta Espetxe Erreglamenduko 4. eta 208.1 artikuluetan oinarrituta egin zen, izan ere artikulu hauen arabera preso guztiei bermatu egin behar zaie gainontzeko hiritarrei ematen zaien pareko mediku asistentzia baliokidea, eta honek dakar, zalantzarik gabe, konfiantzazko

mediku batek eta konfiantzazko zentro batean atenditua izateko eskubidea.

Trasladoa baimentzeko ebazpenik jasotzen ez zenez, 05//04/29an Logroñoko San Millan Ospitalean ebakuntza kirurgikoa egin zioten eta emaitza histologikoa (05/05/03) honakoa izan zen: eskuineko bularreko KARTZINOMA DUKTAL INFILTRANTEA.

Berriro ere Iruñeko kartzelara LEKUALDATZEKO eskaera egin zen, 05/06/03an Bideko Amabirjinaren Ospitaleko Bular Unitatean kontsultara joan ahal izateko. Ebazpenik ez zen jaso, eta honek bisita hau Iruñean egiteko aukera galarazi zuen.

05/07/01ean ebakuntza kirurgikoa egin zioten mastektomia partzialarekin eta kate ganglionar axilar homolateralaren garbiketa. Ginekologoarekin izandako komunikazioaren arabera (SMillan Ospitala, Logroño), gongoilaren itxura barreiadura zabalekoa zen. Anatomia patologikoko emaitzak 7-10 egunen buruan espero ziren.

05/07/08an anatomia patologikoko emaitzak jaso ziren eta bertan jakinarazi zen bigarren honetan ateratako zati kirurgikoak ez duela tumorerik eta aztertutako gongoiloek (15) ere ez dutela tumore-zelularik. Tratamendu Radioterapikoa eta Kimioterapikoa planteatu zen eta baita medikuaren tratamendua, Hartzaileak (+) daudelako. Pronostikoa ona da.

05/08/26an Iruñeko kartzelara ekarri zuten Nafarroako Ospitalean Radioterapia tratamendua jasotzeko.
Radioterapia lokaleko saioak hasi ziren (27-30 egun). Ez zioten modu oso zabalean aplikatu behar izan, izan ere itxura guztien arabera ez zeuden afektatuta. Bisita Ginekologian (COFES-Iturrama): Umetokiko Mioma txiki baten kontrola. II. Motako Diabeteseko aurrekariak direla eta, Oftalmologiarako zita bat jaso zuen errebisio bat egiteko (05 /11/22). Glaukoma kronikoko diagnostikoa konfirmatu egin zen.

06/10/01an Logroñoko kartzelara eraman zuten berriro eta modu horretan Nafarroako sare publikoko Onkologia eta Ginekologia (COFES) zerbitzuetan egin beharreko errebisioak pendiente gelditu ziren.

06/02/23: Iruñeko kartzelara trasladatu zuten denboraldi baterako, ginekologiako errebisio bat egin ziezaioten COFES-Iturraman. Egin zioten baginako ekografian honakoa antzeman zitzaion: bi mioma intramural dituen umetokia, 13.5 eta 7 milimetro diametrokoak.

2005eko ekainetik Tamoxifenoarekin jasotzen ari den tratamendua dela eta, biopsia endometrikoa egitea gomendatu zioten (06ko uztailerako aurreikusia).

Ginekologiako kontsultarako trasladoa Polizia Nazionalak egin zuen, oso modu txarrean eta gaixoarekiko tratu iraingarria emanez. Aipatzekoa da behin eta berriz ohartarazi zitzaiela zein kontuz tratatu behar den goiko gorputz adarra, besapeko gorgoilen hustuketako ebakuntza egin berri dioten emakume bat izanda. Hori jakin arren bere gorputz adarren kontra gehiegizko indarra eragin zioten eta gainera eskuburdinak oso estu jarri zizkioten eskumuturretan. Presoak berak salatu zuen jarrera hau trasladatzen zuten polizien aurrean eta istilua ikusi zuten medikuen aurrean, baina ezin izan zuten ezer egin, polizien jarrera harroa eta txuleskoagatik.
06/05/16: goiko eskuineko gorputz adarra hazita zeukan, mastektomia partzialaren ondoren Linfedema ESDrekin konpatiblea zena eta eskuineko linfadenektomia 05/ 07/ 05ean. Errehabilitazio zerbitzuaren balorazioa gomendatu zen, terapia egokia ezartzeko. Logroñoko Ospitalean kontsulta epe motzean bermatzeko zeuden zailtasunak ikusita, Nafarroako Ospitaleko Onkologia Zerbitzuan kontsultatu zuten eta Nafarroako Ospitalera trasladatzea planteatu zen, balorazioa egiteko.
Logroñoko kartzelan atenditu zuten medikuek eurek ez zuten egokitzat jotzen Marilo kartzelan egotea, izan ere daukan patologia larria zein den ikusita konplikazio ugari izan ditzakeelako. Kartzelako Araudiaren 196. artikuluaren aplikazioa gomendatu zuten, gaixotasunagatik, eta kartzelatik ateratzea eskatu zuten.

06/12/11n Nafarroako Ginekologia Zerbitzura trasladatu zuten denbora batez beste errebisio bat eta balorazio ekografikoa egin ziezaioten. Beste mioma bat detektatu zioten umetokian eta obario batean kiste bat. 6 hilabeteren buruan kontrola egiteko gomendioa eman zuten.

2007/04/27an Logroñoko kartzela berako Tratamendu Juntak eskatu zuen Baldintzapeko Askatasuna ukatu egin zioten.
Egun, mediku frogak egiteko zain dago, digestio mailan Hesteetako Hanturazko gaixotasuna ez daukala ziurtatzeko.

Iruñean, 2007ko maiatzean.

# OSASUN ESKUBIDEA

Euskal preso politikoen aurka espainiar eta frantziar estatuek indarrean dituzten salbuespen neurriek -urteak eta urteak egunak dituen 24 orduetatik 20, 22... orduz ziegetan giltzaperatuta, urrun diren kartzeletan,... bada baldintza horietan 27 urte daramatzanik ere- ondorio fisiko eta sikikoak eragiten dituzte: hezurretako gaitzak, minbiziak, sintoma sikotikoak, delirio krisiak, ideia paranoideak, trastorno obsesibo-konpultsiboak, bulimia nerbiosoak, autolisi ideiak, beldur fobiak eta obsesioak... euskal preso politikoakak beraien buruaz beste egiteko saiakerak egitera bultzatzeraino. Eta, baita hiltzeraino. Jada, 22 dira salbuespen neurri horien ondorioz hil zaizkigun euskal preso politikoak.

Ondorio fisiko eta sikikoak eragin ostean, bi estatuen krudelkeriarekin egiten dugu topo, behin eta berriro osasun asistentzia egokia ukatu egiten baitzaie euskal preso politikoei: frogak berandu egiten dizkiete, ospitalerako trasladoetan, berandu normalean, tratu txarrak ohikoak izaten dira, askatasuna sistematikoki ukatu egiten zaie gaixotasun larri eta sendaezinak dituztenei...

## Osasun eskubidea

Espainiar eta frantziar estatuen espetxe politikak, euskal preso politikoen osasun eskubidea ukatu egiten dute. Errealitate gordin hau ondoko puntuetan laburbildu daiteke:

### Osasun asistentzia eza.

• Mediku-funtzionario askoren interes eza. Kasu askotan arduragabekeria profesionala izaten da. Kartzelaren aldetik jasaten duten jarrera horren adibide gisara, 2005eko azaroaren 14ean, Mansillako kartzelan, hanka lokartu egin zitzaion Juan Jose Rego Vidali. Hurrengo egunean, azaroaren 15ean, gosaldu ostean itsu geratu zen, hau da, une hartan ez zuen ezer ikusten. 09:05 aldera joan zitzaion ikusmena. 09:30ak eta oraindik espetxeko erizaindegira eramana izan gabe jarraitzen zuen. Kartzela berean duten bere seme Iñaki Regok 09:50ean espetxeko segurtasun zuzendari ordea segituan bertaratzeko exijitu zuen. Egoera ikusirik, Juan Josek gose greba hasiko zuela esan zuen. Orduan, espetxeko erizaindegira eraman zuten. Birusen bat ala bularreko angina izan zitzakeela esan zioten eta Leongo ospitalera ateratzea baimendu zuten. Leongo ospitalean, 6 poliziz inguraturik egon zen. Medikuek, lepoko karotida obstruituta ala apurtua zuela esan zioten eta, ondorioz, bi tronbosi jasan zituela, hau da, gaixotasun zerebrobaskularraren zantzuak ditu. Horren aurrean, injekzioa eman zioten tripan. Azaroaren 16an berriro espetxera itzuli zuten, Guardia Zibilen furgoneta batean.
Beste kasu berriago bat aipatzearren, gaixotasun larri eta sendaezina duen Marilo Gorostiagak 15 egunetako errehabilitazioa egin behar du. Pasa den martxoan, 6 errehabilitazio egun egin ostean, errehabilitazio egun gehiago ez dituela izango esan diote

• Tratu gizagabea kontsultetan. Nabarmentzekoak izaten dira ginekologoen azterketak. Izan ere, ez dira euskal preso politikoen eskubideak errespetatzen eta, intimitate eta konfidentzialtasun eskubideak urratu egiten dira, ondorioz, emakumezko euskal preso politiko asko ginekologia kontsulta egin gabe itzultzen dituzte kartzelara, ukatu egiten direlako halako baldintzetan, guardia zibilek beraien intimitatea errespetatu gabe, kontsulta egitera.
Kontsulta, ospitaletako irteeretako... tratu txarrak asko ugaritu dira halaber aspaldian, trasladoa burutu duten polizien aldetik. Martxoa amaieran, esaterako, Galizako kartzelatik ospitalera eramateko atera zuten Alberto Betanzos euskal preso politikoa, elektrokardiograma baten emaitzak jasotzeko. Goizeko 9:00ak aldera atera zuten. Guardia Zibilek esku burdinak beso atzealdean estu-estu lotu zizkioten. Erietxera iritsi eta kardiologoaren kontsultara sartu zenean, honek bere lana burutzeko Alberto-ri esku burdinak kentzeko eskatu zien guardia zibilei. Hauen erantzuna ezezkoa izan zen. Kardiologoak berriro ere eskaera bera egin zien. Erantzun bera jaso zuen. Orduan, kardiologoak bere lana egiten hasteko Albertori arropak nola hala kendu egin zizkion eta bere lana egiten saiatu zen.Amaitu zuenean arropak jantzi zizkion ahal zuen bezala. Erietxetik irten eta kartzelara buelta guztian zehar guardia zibilak furgonetako aire egokitua apropos tenperatura oso baxuan jarri zuten. Albertok, gainera, arropak ondo jantzi gabe zituen. Ondorioz, hotza asko pasa zuen bidaia guztian eta dardarka iritsi zen kartzelara. Eskuburdinak orduan kendu zizkioten, eta, 24 ordu pasa eta gero, oraindik eskuburdinaren markak zituen.

• Infekzio arriskuak ekiditeko prebentziorik eza eta, kontagioak ekiditeko protokolorik eza.

• Euskal preso politikoak kartzelaz aldatzen dituztenean mediku txostenak galdu edo oso berandu iristen dira sarri.

• Gaixotasunen diagnostikoak egiteko premiazkoak izan daitezkeen froga osagarrien atzeratzea. Espezialistekin interkontsultarik ez dute izaten eta, ondorioz, potentzialki gaiztoak izan daitezkeen diagnostiko asko atzeratuta egiten dira. Joan den urtean hil zitzaigun Roberto Sainzi, esaterako, bihotzeko arazoek bularrean eragiten zizkioten

minak, haizeen aurkako tratamenduekin tratatu zizkioten.

### Konfiantzazko profesionalen asistentzia debekatua edo oztopatua.

Eskubide bat aplikatzeko oztopoak edo ukazioak nahiz eta beraien espetxe legedia bertan jasoa egon. Konfiantzazko medikuek kontsulta eguna eta ordua aurretik jakinarazi behar izaten dituzte eta, azken urteetan, kontsulta orduak arbitrarioki murrizten ari dira (beraien legearen arabera, elkarrizketa denbora ez da mugatua). Orain, bide horretan beste pauso bat emanez, konfiantzazko medikuen kontsultak ia sistematikoki debekatzen hasi dira Madrilen Zentralizatutako Espetxe Zaintza Epaitegi Berezitik.

### Kartzeletako mediku-funtzionarioek kanpoko medikuekiko duten kolaborazio eskasa.

Konfiantzazko medikuek mediku bisita burutzeko baimenik izaten ez dutenean, kartzelako medikuarekin edo erreferentziazko ospitalekoarekin harremanetan jartzen saiatzen dira euskal preso politikoaren osasunaren jarraipena egiteko. Saiakera hauek, kasu gehienetan, ez dute fruiturik ematen eta, ondorioz, euskal preso politikoek ez dute aukerarik izaten jasotzen duten tratamenduaren kontrasterik egiteko. Ildo honetan "Tratamendu Junta" delako taldeak (pazienteen jarraipena egiten duten mediku, sikologo, hezitzaile eta segurtasun funtzionarioz osatua) jokatzen duen paper oztopatzailea nabarmendu behar dugu.

### Patologien jarraipen zaila.

Urruntasun geografikoaren eta konfiantzazko medikuekin bisitak izateko ezartzen ari diren geroz eta zailtasun gehiagoren ondorioz (sarri lehendik baimendutako bisitak ukatu egiten dituzte), konfiantzazko medikuak funtzionario medikuekin telefonoz jartzen dira harremanetan. Presoekin, berriz, kasurik gehienetan eskutitzezko (interbenituak) harremana izaten dute. Ildo honetan, buruko gaixotasunak dituztenei jarraipen egokia egitea benetako erronka profesionala izaten da medikuentzako.

### 92. artikuluaren murrizketak.

Beraien legeak dioenari ere jaramonik egin gabe (preso gaixoak askatu egin behar direla dio), mediku profesionalek gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten presoak kalean tratatzeko egiten dituzten eskaerei ere ez die jaramonik egiten.

Euskal preso politikoen aurkako jarrera horrek hildakoak eragin ditu. Joseba Asensio, esaterako, 1986. urtean hil zen Herrera de la Manchan tuberkulosia izanik katarroarentzako medikamentuak eman zizkiotelako; Juan Karlos Alberdi 1988an hil zen Herrera de la Manchan arrisku taldeen barnean egon ez arren eta bihotz arazoak izan ez arren, bihotzekoak eman ziolako; Mikel Zalakain 1990. urtean hil zen Martutenen, lehenagotik jasan zuen bihotzeko bat behar bezala tratatu ez ostean, bigarren bihotzekoa jasan zuelako; Pello Mariñelarena 1993. urtean hil zen Pariseko ospitale batean, La Santeko kartzelan jasandako osasun asistentzia ezaren eta seropositiboa izatearen ondorioz; Eta, Roberto Sainz 2006ko martxoaren 3an hil zen Aranjuezeko kartzelan bihotzekoak eman ostean. Bihotzeko arazoak haizeen aurkako medikamentuekin tratatu zizkioten.

Hori esanik, gaixotasun larri eta sendaezinak dituzten euskal preso politikoak ere ez dituztela askatzen gaineratu behar diogu. Izan ere, gaixotasunak ere xantaia egin asmoz erabiltzen dituzte, hau da, presoa askatuko bada bere damutzea bilatzeko, helburu politikoak lortzeko sufrimendua areagotuz... eta, hori lortu ezean, bizitza salbatzea ezinezkoa denean askatu izan dituzte, azken hilabeteak kalean burutu eta kartzelak hildakoen zerrendetan ez sartzeko. Adibideak hor ditugu: Josu Retola 1987an hil zen, kaleratu eta gutxira, minbizia izan arren garatxo soil bat balu bezala tratatu zutelako kartzelan; Jabi Gorostiza 1995ean hil zen Basurtoko ospitalean, kaleratu eta urtebetera, osasun asistentzia ezaren ondorioz laringeko minbizia garatu zuelako; Juan Jose Etxabe 1996ean hil zen, kaleratu eta 18 egunetara, bihotzekoak emanda. Fresneseko kartzelan izan zuten denboran bere osasun egoerak nabarmen egin zuen okerrera, kartzelaratu zutenerako gainditua zuen hepatitis Ca kartzelako denboran berriro garatu egin zitzaiolako; Jean Louis Maitia 1997. urtean hil zen, kaleratu eta bi hilabetetara, bihotzekoak eman ostean. La Sante kartzelan egon zen denboran bere osasunak okerrera egin zuen; Santiago Diez 1997. urtean hil zen, kaleratu eta zazpi hilabetetara, kartzelan jasan zuen osasun asistentzia ezaren ondorioz, masailezur azpiko minbizia garatu zuelako kartzelan; Esteban Esteban Nieto 1999. urtean hil zen, kaleratu eta 5 hilabete eta 20 egunera, kartzelan jasan zuen osasun asistentzia ezaren ondorioz, minbizi terminala garatu zuelako; Eta, Kepa Miner 2004. urtean hil zen, kaleratu eta bost urtetara, espetxean jasandako bizi baldintza gogorrek eragindako arnasketa arazo larriak zituelako.

Egun hamabi euskal preso politiko dira gaixotasun fisiko edo psikiko oso larriekin daudenak. Preso hauen askatasuna eskatu da

Zentralizatutako Espetxe Zaintza Epaitegian. Ondoko lerroetan, aipatu euskal preso politikoen osasun egoeraren berri ematen dugu:

## 1. Jon Agirre Agiriano.

Aramaiotarra. 1942an jaioa. 1981eko maiatzaren 5ean atxilotua. Langraitzeko espetxean dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: artrosi orokortua (bi aldakak ukituak). Hernia diskala L4-L5en artean. 2005ean egin zioten eskuineko aldakako ebakuntza: protesi bat ezarri diote. Diabetes Mellitus 1998an diagnostikatua. Horren ondorioz: alde biko miopia, hiperkolesterolemia, hiperglizeridemia eta Miokardioko Bihotzeko Larriaren arriskua. Honetaz gain, eskuineko eskuko Dupuytre gaixotasuna.

## 2. Bautista Barandalla Iriarte.

Etxarri Aranatztarra. 1964ean jaioa.1990eko irailaren 18an atxilotua. Iruñeko espetxean dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Kolitis ultzerosoa. 02/03/13an diagnostikatzen diote eta 02/04/30ean larrialdiko ebakuntza egiten diote Zaragozako Miguel Servet Ospitalean: Kolektomia eta Ileostomia bat egiten diote. 03/02/04ean ebakuntza berria: Mukosektomia bat eta ileostomiaren berrezarpena. Espondilitis ankilosantea eta bi aldeetako Sakroileitisa.

## 3. Angel Figueroa Fernandez.

Getxotarra. Langraitzeko espetxean dute egun. 1971ean jaioa. 1994ko urriaren 25ean atxilotua. Bere osasun egoera ondokoa da: Epilepsia tenporala eta eskuinaldeko esklerosi mesiala. Gaixotasun larri eta sendaezina da hau: konbultsioak, portaera aldaketak eta delirioak eragin ditzake. 2005etik aurrera, Epilepsia atakeak izan ohi ditu, maiztasun handiarekin. 06/06an ebakuntza bat egin zioten, lobektomia bat, hain zuzen. Honen ondotik, baina, krisiak areagotu egin zaizkio: 2006ko eta 2007ko uztailekoak dira larrienak; azken garaian etengabeko krisialdiak ditu eta alde fisiko zein psikologikoan larriki eragiten diote. 07/04/12aren inguruan Kordobara itzuli zuten, baldintza kaskarretan: 10 egunetako bidaia, ia lorik egin gabe... 07/06/01: Langraitzera itzuli zuten berriro, kontsulta baterako. Funtzionarien aldetiko jipoi bat salatzen du. Bertatik Txagorritxuko ospitalera eramaten dute, krisi berri batek eraginda. 07/06/5: Neurologia kontsulta Gurutzetako Ospitalean. Biharamunean Langraitzera itzultzen dute. Uztailean zehar krisialdiak areagotzen dira, ia eguneroko kontuak bilakatuz denbora batean. 07/07/23: gose greba hasiko du, kartzelan jasaten dituen baldintzak eta lo egin eza salatuz. Txagorritxuko neurologoaren arabera (07/07/16ko txostena), bere gaixotasunari aurre egin ahal izateko guztiz beharrezkoa du lo egitea, ordutegi finko bat jarraitzea eta estres egoerak ekiditea; baldintza horietako bakar bat ere ez da betetzen bere kasuan. 07/08/17: Bi krisialdi berri izan ditu. 07/09/20: Errepikatu zaizkio krisialdiak: bortitzak, konorte galerarekin.

## 4. Jose Ramon Foruria Zubialde.

Markinarra. 1949an jaioa. 4 urte daramatza preso. Dueñasko kartzelan dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Neo besikala; Maskuriko minbizia. 04/11/22an Gregorio Marañoneko Ospitaleko Urologia kontsultan egindako biopsian Kartzinoma uroteliala erakusten du. 05eko urtarrilean BCG, zistoskopia eta zitologia kontrolak agintzen ditu espezialistak. Une honetan bukatua du fase honetako tratamendua.

## 5. Marilo Gorostiaga Retuerto

Iruñearra. 1956an jaioa.1997ko abenduaren 18an atxilotua. Logroñoko espetxean dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Eskuineko bularreko minbizia (Kartzinoma duktal infiltrantea) 05/05/03an Kartzinoma duktal infiltrantea erakusten dute histologiako emaitzek. Uztailan mastektomia partzial bat egiten diote Logroñoko Ospitalean. Abuztutik aurrera erradioterapia sesioak hartzen hasten da Iruñean. Bitartean Ginekologia kontsultara (COFES-Iturrama) doa non mioma uterino bat diagnostikatzen dioten: 2006ko otsailean bi mioma azaltzen ditu maginako EKOak. Honetaz gain, ebakuntzaren onoriozko Linfedema, Diabetes Mellitus, Dislipemia mistoa eta Hipertentsio arteriala ditu. 2007ko irailean, espetxeak debekatzen du kanpoko fisioterapeuta sartzea, linfedema tratatzeko.

## 6. Gotzone Lopez de Luzuriaga Fernandez.

Aguraindarra. 1959an jaioa.1989ko irailaren 17an atxilotua. Jaenen dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Bularreko minbizia topatu zioten 2007ko ekainaren hasieran (Kartzinoma duktal infiltrantea, 1. graduan) Ekainaren 26an ebakuntza egin zioten Jaengo Ospitalean eta adenokartzinoma erauzi zioten. Irailetik aurrera, erradioterapia tratamendua jasotzen ari da.

## 7. Juan Jose Rego Vidal.

Donostiarra. 1939an jaioa. 12 urte daramatza preso. Mansillako kartzelan dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Gaitz zerebrobaskularra (1988tik ezaguna), Diabetes Mellitus eta hipertentsioa duela hamabost urte baino gehiagotik. Horren ondorioz, Retinopatia diabetikoa, kataraten hastapena bi begietan eta ikusmenaren galera nabarmena bi begietan: ezintasun larria irakurtzeko; ikusmen zorroztasunaren galera larria. Bi aldeko hipoakusia neurosensoriala. Prostataren hipertrofia. B12 bitaminaren eskasia.

2005ko azaroan istripu zerebrobaskular bat izan zuen (tronbosia). Ikusmena eta ezkerreko hankako indar eta mugikortasun gabezia eragin zion. Aldi berean, sei hilabetez egon zen oroimen galerarekin. Zorabioak eta sudurodol jarioak aldiro. Izan ere, bere adina eta bere gaitzen larritasuna kontuan hartuta, kalean egonik ere oso hurbiletik eta asko zaindu beharreko pazientea litzateke. 2007/07: Sendagileak prostataren ebakuntza gomendatzen du. 2007/09: Oftalmologoak ezkerreko begiko ebakuntza gomendatzen du, ikusmena ia guztiz galdua duelarik (kataratak). Eskuinekoan, berriz, galera oso nabarmena da ere. Medikuen arabera, bere kasua larria da oso.

## 8. Josu Uribetxebarria Bolinaga.

Arrasatearra. 1956ean jaioa. Uztailean 10 urte beteko ditu espetxeratu zutenetik. Langraitzen dute egun. Bere osasun egoera ondokoa da: Giltzurruneko minbizia. Ezker giltzurruneko kartzinoma. 2005/06/09an nefrektomia bat egiten diote: ezkerreko giltzurruna kentzen diote. Ondorioz, aldian aldiko kontrolak egin beharko ditu Urologiako Kontsultan; bizitza osorako tratamendua da. Egoera hau (espetxearena, alegia), noski, ez da egokiena gisa honetako gaixo batendako: espetxean jarraituz, kanpoan egonik baino arrisku larriagoa du gaitza birpiztu dadin. Bestela ere, 2 urtetan gaitza birpizteko arriskuaren aukera % 51ekoa da.

Zortzi euskal preso politiko hauetaz gain, beste lau senide preso ere gaixotasun larriak jasanez ditugu. Senide hauek jasaten dituzten gaixotasunak,ordea, sikikoak dira, eta, ez dute beraien izen abizenak publiko egiterik nahi.Beraien nahia errespetatuz, soilik jasaten dituzten gaixotasunen berri emango dugu:

**9.** Autolesio historia eta Depresioak dituen senide presoa. Balizko delirio krisiak izan ditu. Parisen zegoela, Espetxeko Mediku Psikiatriko Zentroan eduki zuten bi hilabetez. 1996ean artatzen duen psikiatraren diagnostikoaren arabera, Antsiazko depresioaren patologia eta oinarrizko pertsonalitatearen desoreka da bere gaitza.

**10.** Nahasmen obsesibo-konpultsiboa dituen senide presoa. Kanpoan ere gaitz berarekin zebilen. Krisi garaiak eta egoera lasaiak tartekatzen ditu.

**11.** Depresio koadro larria duen senide presoa. Pertsonalitate eskizoidea sumatzen zaio.

12. Nahasmen eskizofreniformea duen senide presoa. Depresioa sintoma psikotikoekin.

*Oharra: 92. artikuluak gaixotasun larriak eta sendaezinak dituztenak askatu egin behar direla dio.*

ONDORIO NAGUSIAK

• Preso politikoen aurkako espetxe politikak gaixotasun fisiko nahiz sikiko larriak eragiten ditu. Beraien buruak zauritu eta beraien buruaz beste egitera bultzatzen ditu.
• Euskal Preso Politikoakek urrunduak, sakabanatuak, eta, komunikazio bideak, baita ere, konfiantzazko medikuekin, debekatuak ala guztiz mugatuak izatearen ondorioz, ezinezko zaigu zehaztasun osoz euskal preso politiko guztien osasun egoera fisiko nahiz sikikoaren berri izatea.
• Gaixotasunak ala osasun arazoak detektatutakoan ere, beraien sufrimendua areagotu asmoz, kartzela agintariek zaildu egiten dute gaixotasun ala osasun arazo horiek sendatzea ala gehiago ez okertzea.
• Espetxe politika honek hil egiten du, jada, gure 22 senide preso politikorekin egin duen bezala.
• Euskal Preso Politikoen biziekin jolasten ari dira, eta, beraien eskubideak errespetatzen ez diren bitartean, euskal preso politiko gehiago hiltzeko eta ondorio fisiko eta sikiko larriak jasateko arrisku larria dago. Halaber, jada ondorio fisiko eta sikiko larriak jasaten ari direnen osasun egoera oraindik eta gehiago okertzeko arrisku larria dago.

# SAKABANAKETA POLITIKA

Hil, atzeraezinezko ondorio fisiko nahiz sikiko larriak eragin eta izugarrizko odoluste ekonomikoa sorrarazten duen politika honetan espainiar eta frantziar estatuek sakontzen jarraitzen dutela erakusten dute, euskal preso politikoak gehiago urrunduz, sakabanatuz, bakartuz… Halaber, euskal preso politikoen bizi baldintzak gogortu egin dituzte, komunikazioak murrizten jarraitzen dute eta trasladoetan Guardia Zibilen eta espetxe barruan kartzeleroen jarrerak gogortu egin dira, ziegen miaketak, tentsioaren igoera…

## Destinu aldaketak

2007ko urtarriletik espainiar eta frantziar estatuek 60 destino aldaketa inguru burutu dituzte, euskal preso politikoen egunerokotasunarekin eta pertsona horien orekarekin apurtuz. Burutu dituzten destino aldaketa horietatik 22, Euskal Herrian zituzten euskal preso politikoak espainiar Estatuko kartzelatara urruntzeko eta sakabanatzeko izan dira.

## Trasladoetako tratua

Golpeak, eskuburdinak lotuta ordu luzeak, senideei ezin deitu egunetan, mehatxuak… tratu txarrak, azken finean, jasan dituzte hainbat euskal preso politikok aurten espainiar Estatuan Guardia Zibilak burutu dituen trasladoetan.

## Preso eta kartzela kopuruak eta bataz bestekoak

Egun, espainiar Estatuko 49 kartzelatan sakabanatuta dituzten 452 euskal preso politiko, bataz besteko, Euskal Herritik 625 kilometrotara dituzte. Frantziar Estatuko 30 kartzelatan sakabanatuta dituzten 150 euskal preso politikoak, bataz besteko, Euskal Herritik 806 kilometrotara dituzte. 16 euskal preso politiko baino ez dituzte Euskal Herriko kartzelatan.
Halaber, urrun eta sakabanaturik mantentzen dituzte, beraien amekin batera diren 3 urte baino gutxiagoko 7 haur: bina haur Soto del Realen, Valentzia IIIn eta Dueñasen eta bat Aranjuezen.
Atal honetan 46 euskal preso politiko bakarturik, hau da, beste euskal preso politikorik ez den modulu edo kartzelatan dituztela nabarmendu behar dugu, beraien indefentsio egoera oraindik eta handiagoa baita.

## Sakabanaketak eragindako istripuak eta odoluste ekonomikoa

Egungo sakabanaketaren datuak kontuan hartuz, euskal preso politikoen senide eta lagunek, astero munduari 20 buelta ematea adinako kilometro burutu behar dituzte bisita eskubidea gauzatu ahal izateko.
Estatuek inposatutako kilometro horiek guztiek istripu larriak eragiten dituzte. Iaz, 45 senide eta lagunek jasan zituzten 21 istripu eragin zituen sakabanaketa politikak.
Sakabanaketak eragindako istripuei, bisita eskubidea gauzatu ahal izateko senide eta lagunek gastatu behar duten dirutza gaineratu behar diogu. Izan ere, egungo sakabanaketa datuak eta bisita eskubidea arautzen duen legedia kontuan hartuz gero, familia bakoitzak hilero 1.728,79 euroko gastuari egin beharko lioke aurre bisita guztiak beraien legediak dioen bezala gauzatu ahal izateko.

## Bizi baldintzak

Espainiar Estatuan dituzten euskal preso politikoen %80 inguru 1. graduan dute sailkaturik, hau da, bizi baldintzarik gogorrenetan: egunak dituen 24 orduetatik 20 orduz edo gehiagoz ziegetan giltzaperatuta, beste ezer egiteko aukerarik gabe, Euskal Herriko unibertsitateetan ere ikasi ahal ezin dutela. Konpara dezagun datu hori beste batekin: espainiar Estatuan dituzten preso guztiak, politikoak eta sozialak, denak kontuan hartuz, ez da %2ra iristen 1. graduan dituztenak. Oso esanguratsua eta euskal preso politikoen aurka indarrean duten espetxe politika bereziaren erakusle da beraz, Euskal Preso Politikoen Kolektiboko kideen %80 inguru halako baldintzetan izatea.
Bizi baldintzen alor honetan nabarmentzekoa da, euskal preso polikoen aurkako miaketak areagotu eta gogortu egin direla.
Frantziar Estatuan ere bizi baldintzarik gogorrenak jasaten ari dira, egunak dituen 24 orduetatik 22 orduz ziegan giltzaperaturik izaten dituztelarik kasu askotan.
Atal honetan eta, frantziar Estatuari dagokionean, Igor Letona martxoaren erdi aldera Nanterreko kartzelan jipoitua izan zela salatu behar dugu. Patioan zen. Patiotik gora igortzerakoan, beste euskal preso politikoek ez zuten ezer berezirik jasan baina Igorri biluzteko agindu zioten. Igor ukatu egin zen biluztera. Zaindariekin lehen tirabira izan ostean, igotzeko agindu zioten, gero elkar ikusiko zirela jakinarazi ostean. Behin ziegan zela, zerbitzu burua eta hainbat zaindari joan zitzaizkion Letonari eta, ziegatik ateratzeko agindu zioten. Letonak ea nora zeramaten galdetu zien eta, erantzunik ez jasotzean, ez zen ziegatik atera. Azkenean, hiru-lau zaindari sartu ziren ziegara eta, kolpeka, eskuburdinak jarri zizkioten. Hala zutela, beste gela batera eraman zuten eta berriro biluzte-

ko agindu zioten. Igor ukatu egin zen eta zaindariek bere nahiaren aurka biluztu egin zuten. Gero, berriro, ziegara eraman zuten. Jasandako kolpeen ondorioz, beltzuneak zituen gorputz guztian eta min dezente bizkarrean.

## Komunikazioak

Halaber, komunikazio guztiak (bisitak, telefono deiak eta gutunak) guztiz murriztuta eta kontrolatuta dituzte, debekatuta ez bada. Frantziar Estatuan, epaitu gabe diren presoek ez dute telefono deiak burutzeko eskubiderik ere izaten. Espainiar Estatuan, berriz, astean 5 minutuko bost dei egiteko eskubidea dute euskal preso politikoak. Dei guztiak, bisitak bezalaxe, grabatuak izaten dira. Halaber, gutunak irakurri egiten dizkiete. Komunikazioari dagokionez nabarmentzekoa da ere, 2004. urteaz geroztik bisitak 10eko zerrendetara mugatu dituztela espainiar Estatuan, ondorioz, senide eta lagun gutxi batzuen artean egin behar diotelarik aurre sakabanaketaren zamari. Frantziar Estatuan, berriz, denbora luzez -hainbat kasutan urteetan- ez dizkiete onartzen lagunen bisitak, oraindik epaituak izan ez direnaren aitzakiapean.






A0015
**AUDIENCIA NACIONAL**

**Juzgado Central de Menores**
**(Con Funciones de Vigilancia Penitenciaria)**

Domicilio: GRAN VIA 52, 5ª PLANTA
Tlf: 91 547 4377/4587
Fax: 91 335 27 57

N.I.G.: 28079 25 2 2003 0101422

**ASUNTO :** PETICIONES Y QUEJAS 0000419 /2003 0003
**INTERNO:** MARIA DOLORES GOROSTIAGA RETUERTO
**CENTRO PENITENCIARIO:** PAMPLONA

**Negociado:**

**AUTO**

En Madrid, a treinta y uno de Julio de dos mil siete.

Dada cuenta; y

**HECHOS**

I.- Se ha recibido en este juzgado escrito del interno MARIA DOLORES GOROSTIAGA RETUERTO del Centro Penitenciario PAMPLONA formulando petición de libertad condicional.

**II.-** Tramitada la oportuna queja, se practicaron cuantas diligencias se estimaron oportunas, en orden a esclarecer los motivos de queja.

**III.-** Se remitió queja al Ministerio Fiscal que emitió informe.

**RAZONAMIENTOS JURIDICOS**

**PRIMERO.-** El articulo 76 de la Ley Orgánica General Penitenciaria establece que el Juez de Vigilancia tendrá atribuciones para hacer cumplir la pena impuesta, resolver los recursos referentes a las modificaciones que pueda experimentar con arreglo a lo prescrito en las leyes y reglamentos, salvaguardar los derechos de los internos y corregir los abusos y desviaciones que en cumplimiento de los preceptos del régimen penitenciario puedan producirse.

**SEGUNDO.-** En el presente caso, examinado el expediente y visto el informe del Centro Penitenciario, debe señalarse:

A) Que de lo hasta ahora actuado se desprende que el 29 de abril se produjo la extirpación de un tumor en la mama derecha, sin recidiva posterior hasta la actualidad. Asimismo, existen otras cuatro enfermedades no graves en concurrencia y que pueden ser debidamente tratadas por medio de fármacos y asistencia médica, bien intra, bien extrapenitenciaria.

B) Que se ha solicitado la libertad condicional. Ahora bien, dicha libertad condicional no puede serlo al amparo del art. 92.3 C.P., puesto que en ninguno de los sucesivos informes médicos que se han ido aportando se ha hecho constar, literalmente, que exista un peligro patente para la vida del interno, que es, precisamente, lo que exige este apartado, a diferencia de lo dispuesto en el número 1 de dicho articulo. De ello es consciente el propio



Centro Penitenciario, que si bien ha progresado a la interna de grado, se ha cuidado mucho de elevar expediente de libertad condicional de conformidad con el número 2 del articulo 92 del C.P.

Lo anterior es importante porque en los apartados 1 y 2 del mismo articulo 92 del C.P., que hacen referencia a la libertad condicional de enfermos muy grave con padecimientos incurables, se hace preciso valorar la dificultad para delinquir y la escasa peligrosidad del sujeto como elementos esenciales para su concesión.

C) Por otro lado, se debe recordar que, de conformidad con la STC 48/96, de 26 de marzo, es preciso, para que se produzca la excarcelación por esta via, que *"tan sólo una enfermedad grave e incurable,* ***en cuya evolución incida desfavorablemente la estancia en la cárcel con empeoramiento de la salud del paciente****, acortando así la duración de su vida, aún cuando no exista riesgo inminente de su pérdida, permite la excarcelación del recluso aquejado por aquélla, si se dan las demás circunstancias cuya concurrencia exige el Código Penal".* Es decir, que es requisito imprescindible, de acuerdo con la doctrina expuesta, que la estancia en prisión se constituya en elemento capaz, por sí solo, de provocar acortamiento de las expectativas de vida, lo que no se ha acreditado aquí en modo alguno a lo largo del expediente y a través de los informes médicos que obran en la causa. No se ha afirmado que la estancia carcelaria sea factor determinante de una disminución de las expectativas de vida, que es, justamente, lo que demanda el Tribunal Constitucional.

Por otra parte, se debe tener en cuenta el segundo elemento que exige la normativa, cual es la escasa peligrosidad del sujeto y la dificultad para delinquir. Al respecto se debe afirmar que el interno tampoco cumple con este requisito. Basta observar su historial criminal para darse cuenta que es un delincuente de largo recorrido cuya única ocupación, casi en exclusiva, ha sido la comisión de delitos a lo largo de diferentes décadas, lo que revela, bien a las claras que su estado de salud no seria, en modo alguno, impeditivo de la comisión de nuevos delitos. Es por ello, y no es en modo alguno casual, que no hay un verdadero juicio pronóstico favorable como el que exige el art. 90 C.P., y que también es imprescindible aquí, habiéndose limitado el Centro a una progresión de grado al amparo del art. 104.4 del R.P.

Por todo lo expuesto, no cumpliéndose los requisitos exigidos por la legislación vigente, procede la desestimación de la petición formulada.

**TERCERO.-** Se colige que no existe base para estimar la queja, pues la actuación de la Administración penitenciaria se adecua a lo previsto en la Ley y el Reglamento sin que se aprecie abuso o desviación en el cumplimiento de los preceptos del régimen penitenciario (arg. art. 76.1 y 2 g LOGP).

**VISTOS** los preceptos legales citados y demás de general y pertinente aplicación.

**PARTE DISPOSITIVA**

Se desestima la queja del interno MARIA DOLORES GOROSTIAGA RETUERTO del Centro Penitenciario LOGROÑO

Notifíquese esta resolución a las partes, haciéndole saber que no es firme y contra la misma cabe interponer **RECURSO DE APELACIÓN** en el plazo de cinco días a contar desde el siguiente a la última notificación a las partes, lo que se verificará mediante escrito presentado en este Juzgado y dirigido a la Sala de lo




Penal de la Audiencia Nacional (disp. adicional 5ª, apto 8º LOPJ) que deberá ir firmado por abogado y facultativamente por procurador designado por el interno, pudiendo en su caso solicitar que le sean designados abogado y procurador del turno de oficio, en cuyo caso se suspenderá el plazo de interposición de recurso, siempre que la solicitud se efectúe dentro del plazo de cinco días para recurrir.

También puede interponerse recurso de reforma en el plazo de tres días previo al de apelación ante este Juzgado.

Así lo manda y firma el Iltmo Sr. JOSE LUIS CASTRO ANTONIO Magistrado/Juez del JDO. CENTRAL VIG. PENITENCIARIA ; doy fe.

**DILIGENCIA.-** Seguidamente se cumple lo acordado; doy fe.

# GALDETEGIA:

Nombre/Izena:
Apellido/Abizena:
Vecino de alde zaharra/Alde Zaharreko auzokidea: Si/Bai No/Ez
Miembro/socio-a/trabajador-a... de:
Argazkia

1. Euskal preso politikoen egoera ezagutzen al duzu?
¿Conoces la situación de los/as presos/as políticos/as del barrio?

2. Ba al zenekien Marilok gaixotasun larri bat pairatzen duela?
¿sabias que Marilo sufre una enfermedad grabe?

3. 92. artikuloa esagutzen duzu?
¿Conoces el artículo 92?

4. 92. artikuloak, gaixo dauden presoak kaleratu behar direla dio, bazenekien?
¿Sabías que el artículo 92 dice que los/as presos/as enfermos/as deberían estar en la calle?

5. Jokinek, auzoko presoa, kondenaren 3/4ak beteak ditu, eta haien legediaren arabera kalean egon beharko luke, ba al zenekien?
¿Sabías que Jokin tiene las 3/4 partes de la condena cumplidas, y según sus leyes debería salir en libertad?

6. Zergatik uste duzu Euskal Preso Politikoei ez zaiela legedia aplikatzen?
¿Porqué crees que a los/as Presos/as Politicos/as Vascos/as no se les aplica el régimen penitenciario como al resto?

7. Zer iruditzen zaizu egoera hau?
¿Que te parece esta situación?

8. Auzoan ezaguna dela usta duzu?
¿Crees que en el barrio es conocida?

9. Zein izan beharko litzateke bizilagunen jarrera honen aurrean?
¿Cual crees que debería ser la actitud de los/as vecinos/as del barrio ante todo esto?

10. Gure bizilagun presoek pairatzen duten eskubide zanpaketa etengabea salatzeko eta harekin bukatzeko, zer egin ahalko litzateke?
¿Qué piensas que se podría hacer para denunciar y acabar con la sistemática vulneración de derechos de nuestr@s vecin@s encarcelad@s?

11. Zeozer gehitzekorik?
¿Algo más que añadir?